# Donostiyan zapatari festa

## 1827 garren urtecoa asteleen iñauteri egüerdiyan

---

### Crisquitin

*(Ariya biyurtzen)*

Aricho ori ondo biyurtu
biyotz nereco lastana,
eltziac ondo iraguingabe
echetic nator sugana,
plazara lasterca suregana
jaquinic dansan cerala.

---

### Contrapasa

*(Ariyari figura ematen.)*

Nere maitea dago, dago,
tableru gañian, ian,
humore onarequin
Cantari lanean,
escubetan arturic, turic
piquea ta ariya, iya,
nere cutuncho goso
buru galgarriya.

---

### Arre Pocho.

*(Soluba biguntzean.)*

Chatea, chatea arida
sure matrillua
arrigaren gañean
biguntzen soluba,
eta soñucho orrec
emen barrenean,
chatea, chatea eguitendit
nere biyotzian

---

### Yriyarena.

*(...ari cosca eguitean.)*

Nere ortzchuac,
ortzo nereac,
beguira miñ artu
beguira miñ artu

### Zapatariena

*(...ari orman puntada ematean.)*

Nere zapataricho maiteac
Orman sarturic zapata
Poliquicho eta gustis berdin
Puntuac ondo artu eta
Pamparroi danca zapata

### Ariñ ariñ.

*(...gomarequin sapata apaintzian.)*

Leun gomarequin
zapata apaintzen
nere gustiscochoa
ari da orainchen,
baldin badu biyotza
nic besin leuna,
lasterchon isangodet